ZUZENDU AKATSAK:

# JENTILAK eta JENDE TXIKIA

Euskal Herriko lehen biztanleak izan ziren jentil**a**k. Izugarri handiak ziren, benetako erraldoiak, baina gorputzaren handitasun berbera zeukan beraien inozentzia**k**. Ume**a**k bezalakoak ziren. Eta, egun batean, iritsi ziren gizaki batzu**k** Euskal Herrira, eta bertako jabe bihurtzea erabaki zuten. Gizon haiek zu bezalakoak ziren, txikiak, baina oso bizkorrak eta azpijaleak.

- Jentilak, begira nola jokatuko dugun –esan zieten gizon txiki**e**k-. Borroka egingo du gutako indartsuena**k** zuen arteko indartsuenarekin. Nor**k** irabazten duen, **hark** izango du lur guzti hauen jabego**a**.

Jentilak bat etorri ziren. Egun seinalatuan, hantxe zegoen beraien arteko indartsuen**a** gizon txikiarekin neurtzeko prest. Baina, borroka hasi baino lehen, gizon txiki**a**k holaxe mehatxatu zuen jentil**a**:

- Jentila, hobe duzu niri amore ematea. Bestela harri hau birrintzen dudan bezala birrinduko zaitut **zu**.

Mehatxuarekin batera, gizon txikia**k** gazta egin berri bat desegin zuen eskuarekin. Baina jentil**a** ez zen tranpaz ohartu, gazta **hura** benetako harria zela uste izan zuen, eta baietz erantzun zion, amore emango ziola eta ez zuela borrokarik nahi.

Bigarren lehia makilarekin zen, ea nor**k** botatzen zuen makila urrutiago. Gizon txikiak makila hartu eta aurreko mendi baten gailurrean zegoen artalde**a** erakutsi zion jentilari.

- Jentila, ikusten al duzu artalde hura? Bada, begira zer gertatzen den makila botatzeko keinua egiten dudanarekin batera.

Bera**k** keinua egin eta artalde**a** korrika abiatu zen ihesi, makilaren beldurrez bezala. Jakina, gizon txikia eta artzaina bat eginda zeuden.

- Harrigarria! Amore ematen dizut honetan ere –esan zion jentil**a**k. Esan bezala, oso inozoa zen.

Hirugarren lehia janariarekin zen, ea nor**k** jaten zuen gehiago eserialdi batean. Gizon txikiak ardo zahagi bat sartu zuen arroparen azpian, eta jan ezin guztia haren ahotik bideratzen zuen. Hala, bete zuen, eta altxatzeko gai ez zela gelditu zen. orduan, hartu labana eta, zahagiari behetik gorainoko ebakia eginez, hustu egin zuen. Horrek izugarri harritu zuen jentil**a**.

- Ez al duzu minik hartzen sabela horrela ebakita? –galdetu zion.

- Bai zera! Ezta batere! –erantzun zion gizon txikiak.

- Emadazu labana hori! –esan zion jentilak, eta bere sabel**a** ebaki zuen.

“Sortu da jende txiki perrua, akabatu da jende umanua”, entzun omen zitzaion jentilari hiltzerakoan. Eta halaxe bukatu ziren jentilak. Orduz geroztik, jende txiki**a**k agintzen du Euskal Herrian.